# Erromantxe

**Erromantxea** erretorromanieraren dialektoetako bat da, eta Suitzako lau hizkuntza ofizialetako bat, alemanarekin, frantsesarekin eta italierarekin batera. Suitzako % 0,5-0,9 inguruk hitz egiten dute, ia 35.100 hiztunek (2000ko inkesta baten arabera) ama hizkuntza dute, eta Grisonia kantonamenduan bizi dira gehienak.

Latin arruntetik datorren erromantze mintzaira dugu, erretorromanieraren dialekto nagusietako bat, ladinoarekin eta friulierarekin batera.

*Rumantschia* hiztunen lurraldeak hartzen duen izena da.

| Erromantxea | |
|---|---|
| rumantsch — Rumantsch | |
| **Datu orokorrak** | |
| **Lurralde eremua** | Suitza |
| **Hiztunak** | 35.000 |
| **Rankinga** | *Ez 100 mintzatuenen artean* |
| **Ofizialtasuna** | Suitza |
| **Eskualdea** | Grisonia |
| **UNESCO sailkapena** | 3 arrisku ziurran |
| **Araugilea** | - |
| **Hizkuntza familia** | |
| hizkuntza nostratikoak<br>Hizkuntza euroasiarrak<br>Indoeuropar hizkuntzak<br>Italiar hizkuntzak<br>Hizkuntza erromantzeak<br>italo-mendebaldeko hizkuntzak<br>mendebaldeko hizkuntza erromantzeak<br>Q97646466<br>Erretorromaniera | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza-tipologia** | subjektua aditza objektua, silabadun hizkuntza eta hizkuntza fusionatzailea |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-1** | rm |
| **ISO 639-2** | roh |
| **ISO 639-3** | roh |
| **Ethnologue** | roh (http://www.ethnologue.com/language/roh) |
| **Glottolog** | roma1326 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/roma1326) |
| **Wikipedia** | rm (https://rm.wikipedia.org) |

## Eduki-taula



## Historia

- 1552an Jacob Bifrunek *"Christiauna fuorma"* izenburuko katixima idatzi zuen.
- 1560an Itun Berria itzuli zuten.
- 1919an "Lia Rumantscha" sortu zuten, hizkuntza sustatzeko erakundea.
- 1925eko urtarrilaren 17an lehenengo irratsaioa egin zuten.
- 1938an Suitzako lau hizkuntzen artean onartu zuten.
- 1963ko otsailaren 17an lehendabiziko telebista saioa emititu zuten.
- 1982an Heinrich Schmid hizkuntzalariak Rumantsch Grischun mintzaira batua abiatu zuen, hiztunek poliki eta partzialki onartu dutena.
- 1996an hizkuntza ofizialtzat hartu zuten.

## Estatusa

Kantonamenduka, mintzaira soilik ofiziala da Grisonia kantonamendu elehirudunean, eta bertan udalerri bakoitzak erabakitzen du bere hizkuntza ofiziala.

Erromantxedunek Suitzako administrazioarekin hizkuntza erabiltzeko eskubidea dute, baina bakarrik "jatorrizko hiztunek". Agintariek, erantzutean, Rumantsch Grischun erabiltzen dute. Halaber, testu ofizial batzuk itzultzen dituzte, baina kultura arduradunek berek azkenean onartzen dute oso eskaintza sinbolikoa eta murritza egiten dutela. Gainera, zerbitzuen eskaerak oso gutxi dira, batzuetan hiztunek hizkuntza batua baztertzen dutelako eta, beste batzuetan, alemana lehenesten dutelako.

Izan ere, egoera gutxituan dago herritarren eta hiztunen aldetik, balorazio txikia edukita. Suitzako lau hizkuntza ofizialen artean gutxien erabilia da. Halaber, serbo-kroazierak, adibidez, ofiziala ez den arren, harrera hobea dauka, 100.000 hiztun inguru baititu.


Suitzako hizkuntzak: Hego-ekialdean, laranja-arrosaz, erretorromaniera.

## Dialektoak

Eskualdearen arabera, Sursilvan (Surselvako barrutia), Sutsilvan, Surmiran (Albulako barrutia), Puter eta Vallader (Inneko barrutia) aldaerak ditugu.

Eredu batuaren moduan, Rumantsch Grischun dugu, 1982an Heinrich Schmiden taldeak abiatuta.



Erromantxearen hiztunen mapa Grisonia kantonamenduaren barruan.

## Erakundeak

Lia Rumantscha hizkuntza sustatzen duen erakunde nagusia da, 1919an sortua eta gaur egun hainbat elkartek osatua.

## Literatura

Egile garrantzitsuenen artean Linard Bardill, Peider Lansel eta Men Rauch ditugu.

## Hedabideak

Radio Televisiun Rumantscha (RTR) irrati-telebista katea da.

**"La Quotidiana"** egunkaria eta **"Punts"** gazte hilabetekaria ere aipatzekoak dira.

## Esapide batzuk

*Allegra* - Kaixo

*Co vai?* - Zer moduz?

*Bun di* - Egun on

*Buna saira* - Arratsalde on

*Buna notg* - Gabon

*A revair* - Adio, Agur

*A pli tard* - Gero arte

*Perdunai* - Barkatu

*Per plaschair* - Mesedez

*Grazia fitg* - Eskerrik asko

*Anzi* - Ez horregatik

*Gratulazions* - Zorionak

*Bun cletg* - Zorte on

*Quants onns has ti?* - Zenbat urte dituzu?

## Erreferentziak

## Ikus, gainera

- Europako hizkuntza gutxituak.

## Kanpo estekak

- Lia Rumantscha (http://www.liarumantscha.ch/Home.270.0.html?&L=0)
- Erromantxezko Irrati Telebista (RTR) (http://www.rtr.ch/)


Hizkuntza honek bere Wikipedia du: Bisita ezazu.

**Autoritate kontrola**

**Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q13199 ·
Multimedia: Romansh language (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Romansh_language)

**Identifikadoreak** ·
BNF: 11979776n (https://catalogue.bnf.fr/ark:/12148/cb11979776n) (data) (http://data.bnf.fr/ark:/12148/cb11979776n) ·
GND: 4120164-4 (https://d-nb.info/gnd/4120164-4) · LCCN: sh85110829 (https://id.loc.gov/authorities/sh85110829) ·
NKC: ph239897 (https://aleph.nkp.cz/F/?func=find-c&local_base=aut&ccl_term=ica=ph239897) ·
AAT: 300389162 (https://www.getty.edu/vow/AATFullDisplay?find=&logic=AND&note=&subjectid=300389162) ·
**Hiztegiak eta entziklopediak** · HDS: 024594 (https://hls-dhs-dss.ch/de/articles/024594) ·

LIR: 1440 (http://www.e-lir.ch/e-LIR___Lexicon.1440.450.0.html) · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/Romansh-language)

| Hizkuntza erromantzeak | |
|---|---|
| **Ekialdekoak** | Aromaniera • **Errumaniera** (moldaviera, valakiera) • Istro-romaniera • Meglenera |
| **Hegoaldekoak** | Sardiniera (campidanera, logudorera, sassariera) |
| **Mendebaldekoak** | Astur-leonesa (asturiera, extremadurera, leonesa, mirandesa, montañesa) • Borgoinera • *Dalmaziera* • Emiliano-romagnoloa • Erretorromaniera (erromantxea, friuliera, ladinoa) • Franche-comtera • Frankoprovenzera • **Frantsesa** • Galiziera (eonaviera, fala) • Galoa • **Gaztelania** (kaloa, latinoamerikar gaztelania) • Istriera • **Italiera** • **Katalana** (algerera, balearrera, erdialdekoa, valentziera) • Korsikera (gallurera) • Ladinoa • Liguriera (genovera, monakoera) • Lombardiera • Lorrenera • *Mozarabiera* • *Nafar-aragoiera* (aragoiera, *errioxera, nafar erromantzea*) • **Napoliera** • Normandiera (jerseyera, guerneseyera) • Okzitaniera (gaskoia, limousinera, proventzera) • Piemontera • Pikardiera • Poitevin • **Portugesa** (afrikar portugesa, brasildar portugesa) • **Siziliera** • Valoniera • Veneziera • Xanpainera |

Letra *etzanez*: hizkuntza hilak. Letra **lodiz**: 5 milioi hiztun baino gehiagokoak. Parentesi artean: parentesiaren ezkerrean dagoen hizkuntzaren dialektoak.



To ɔar

## Nabigazioa

- Azala
- 
- Txokoa
- Albisteak
- Aldaketa berriak
- Ausazko orria
- Laguntza
- Dohaintza egin

## Tresnak

- Honanzko lotura duten orriak
- Lotutako orrietako aldaketak
- Fitxategia igo
- Orri bereziak
- Lotura iraunkorra
- Orri honen datuak
- Artikulu hau aipatu

Wikidata itema

## Inprimatu/esportatu

- Liburu bat sortu
- PDF gisa jaitsi
- Inprimatzeko bertsioa

## Beste proiektuetan

Wikimedia Commons

## Beste hizkuntzak

- Davvisámegiella
- Novial
- Português
- Afrikaans
- Žemaitėška
- עברית
- Nordfriisk
- Kiswahili
- 日本語

